generorok bezala, irakurlea (entzulea) behar du eta, horregatik, landarediaren antzera, sustraiak lurrari lotuta, bizirauteko eta garatzeko estrategiak asmatu ditu. Gurean, kantagintzan eta bertsolaritzan mozorrotuta dauka habia goxoa poesiak. Masa fenomeno bilakatzeraino eraman duen arrakasta horrek berak, paradoxikoki, desjabetu egin du poesia, izena ukatzeraino.

Hala ere, irakurraldi eta emanaldi ugarien bidezko poesiaren nolabaiteko berpizkundearen aurrean gaudela iruditzen zait. Lokal txiki eta ez hain txikitan eskaintzen dira liburu argitaratu berrien "bertsio ozenak". Eta horrek poesiari orain arteko bide estutu eta murriztuetatik ateratzeko aukera eman diezaioke. Gara egunkariak joan den martxoaren 5ean Jon Maiak Anoetako Belodromoan irakurritakoa izendatzeko «idazki errezitatu» deitu zion.

Esan bezala, poesiak kantuen eta bertsolarien altzoan egin du gureganainoko bidea. Eta hor du oraindik ere onarpen mozorrotua. Poema bat eta bertso bat ez dira berdina, ezta kantu baten hitzak ere, baina poema musikatuak eta zentzu hertsian ahozko literatura ez den bertso jarriak ere hor daude. Azken finean, kantuen letragileei eta bapateko bertsolariei poeta deitzea zilegi ez bada, haien ahaide hurbiltzat har genitzake. Eta, noski, tarteka, poetatzat ere. Lete kantaria, "kantautorea", ez al zen poeta? Eta Bilintx? Eta Andoni Egaña bertsolaria ez ote dute poetatzat sailkatuko hemendik urte batzuetara. Jon Maia bertsolaria eta kantaria ez al da finean eta funtsean poeta? Ez al dago bertsolari guztiak poeta gisa hartzeko errezelu gehiegi? Ez al dago bertsolarien arrakastarekiko jeloskorkerian haiekiko nahigabeko onarpena? Ez al genuke onartu behar bertsolaritzaz jantzitako poesia dela euskal literaturako generorik arrakastatsuena?

Hemeretzigarren mendeko eta hogeigarrenaren hastapeneko euskal literaturan txertatuak ditugu bertsolariak, erdi poeta, erdi kantari... Bilintx, Xenpelar, Txirrita, Basarri... Xalbador... Besteak *ars minor* baten ordezkari gisa baztertzen dira, hogeigarren mende amaierako loraldira arte. Orduan, Amurizak bertsolaritzari beste lustrea ematen dio, «popularizatzen» du, baserritik hirira dakar, bertso-eskolen fenomenoa... Egaña... Bertsolariak polifazetikoak bilakatzen dira, eta birtuosoak. Profesionalak. Baina, noski, ez dira «idazleak». Batzuk bai, eta hor hasten da saltsa. Hedoi Etxartek Jon Maiak Belodromoan egindako performancea aipagai zuen Berriako zutabean «nobelista» izenondokoa erantsi zion. Ez al da literatura bertsolaritza? Edo da (arrakastatsua eta popularra delako) nobletzat jotzen den idazlaritza motari erantsitako oraindik baserri urrina galdu ez duen genero bastart hiritartua?

Izan ere, euskal literaturak badu arazo bat bertsolaritzarekin: ez da homologagarria inguruetako literaturekin. Kubara eta horrelako inguruetara joango gara repentistak eta besteren bila. Katalunian ere agertuko zaizkigu inprobisatzaileak... baina Lehen Mundu Garatura esportatzerik ez dago. Eta esplikatzeko lanak izaten ditugu. Eta horrela, AEBen azpi-estatu biren mende bizi garen natibook atal berezia eta berezitua egin dugu bertsolaritzarekin kultur orrialdeetan literaturaren ondoan, azpian edo gainean (kirol orrialdeetan herri-kirolarekin egiten den moduan).

## Bigarren minaren eztanda: Bizi Troindoratu

Kantu eta bertso doinuen altzoan iritsi zaizkigu poemak iraganetik. Mordoxkak egin du mendez mende belarritik garunera eta garunetik eztarrirako bidea. Eta hala igortzen ditugu etorkizunera ere teknologia berriekin fidaturik (gero eta gutxiago

kantatzen baitugu; gero eta gutxiago ikasten baititugu bertsoak buruz).

Kantuak ordea ordainsaria eskatzen dio poemari denboran gaindi bidaiatzeko. Hara, niri hiru kantuk ordainarazitakoa:

LEHENA: Gaztaroko afalosteko kanturriadetan, lepoko zaina eztanda egiteko zorian kantatzen genuen garaian, zer arraio esaten ari ote nintzen ez nekiela josten nituen Atharratzeko Jauregiko Kantuaren hitzen silabak. Noski, xiberotarra hain zen iluna, misteriotsua... Ez nintzen ausartzen esatera denok hain bihotz kantatzen genuen hura ez nuela ulertzen. Horrela, jakin-mina egin zitzaidan «*bizitroindoratu*» hori zer nolako bizimodua izan ote zitekeen, ez baina Azkueren hiztegian bila hasteko adinakoa.

Askoz beranduago, Zuberoan gaindi ibiltzea egokitu zitzaidan batean, hitzorduaren zain Ozazen geldialditxoa eginda geundela, haraino eraman ninduenak azaldu zidan "bizi troindoratu" horren zentzua eta kanta nigan loratu zen.

Ozaze Jaurgainian *bi zitroin doratu*
Atharratzeko Jaunak bata du galdatu;
uken du arrapostu eztirela huntu,
hunturik direnian batto ukanen du.

BIGARRENA: Ozazeko ondu gabeko zitroin doratu bi horien inguruko gaizki-ulertuak ez bezala, Bernard Goienetxe Matalazen kantaren itxuraldatzeak eragin eta ondorio psiko-soziologiko eta politikoak ditu. Harekin aritu gara azken hamarkadetan tirano arrotzei aurre eginez. Matalaz apaizak iraganetik, nolabaiteko zilegitasuna ematen zion bere herria askatzeko armak erabiltzen zituen euskaldunari, denak egiazko xiberotarrak izan gabe ere egiazko euskaldun izanik, Matalazek desio zuen egun

hori heldua zen azkenean, Mitikilekoaren profezia betetzen ari zen, jaikiak ginen tirano arrotzen hiltzeko.

Horrela agertzen da kantutegi modernoetan:

Agian, agian, egün batez
jeikiko dira egiazko xiberutarrak
egiazko euskaldunak
tirano arrotzen *hiltzeko*

Eta agian horrela behar zuen. *Troindoratu*-rik ez dago euskaraz, baina Matalazenaren jatorrizkoan *hil* ordez agertzen zen *ohil* hori bai. Norbaitek inprenta edo ahoskatze akatsa izango zela pentsatuko zuen, edo zubereraren aldaeraren bat. Eta kantaren zentzua ulertzen lagundu zigun manexei, argi baitzegoen tirano kanpotarrak akabatu behar genituela euskaldunok. Sententzia argia.

Ez da *ohil* ordea inprenta-akatsa, ez zubereraren aldaera.

*ohildu*, ohil/ohildu, ohiltzen. 1 *du* ad. *Zub.* 'egotzi, bota' 2 *du* ad. *Zub.* 'uxatu' (*Hiztegi Batua*)

Agian, agian, egün batez
jeikiko dira egiazko xiberutarrak
egiazko euskaldunak
tirano arrotzen *ohiltzeko*

Euskal Herriaren independentzia eta sozialismoaren alde arma bidezko borroka bertan behera uztea erabaki eta gero, Matalazen kantaren jatorrizko bertsioa berreskuratzeko une egokia izan daiteke. Zeregin berria aurrekoa baino errazagoa izango den uste okerrik egin gabe.

HIRUGARRENA: Atxilotu ostean, Moulinseko Maison d'Arrêteko azken solairuko kaiola batera ateratzen ninduten egunean ordubetez. Kantu, dantza eta irrintzi (baita bertso ere!) pasatzen nuen denbora. Garai bateko kanten hitzak oroitzen saiatu eta Telesforo Monzonek Eustakio Mendizabalen gorazarrez idatzitako *Txikia* etorri zitzaidan gogora apurka-apurka.

Monzonek Kantauri itsasoari esaten dio (toka) harrotzeko arrazoirik baduela, eta enkargua ematen etorkizunari olatuen bidez oroitaraz diezaion... eta hor sortu zitzaidan zalantza/nahasketa. Horrela kantatzen nuen nik, eta horrelaxe aurkitu dut kantutegi pare batean:

Harro hadi Kantauri itsasoa
ta haien betiko loa
betiko kanta zak
geroari esaiok olatuetan
*herri zaharrak* ez direla itzaltzen.

Nik ez nion eragozpenik aurkitzen, mezu egokia iruditzen zitzaidan, kantuarekin kontraesanean ez zegoena. Jatorrizko bertsioa eskuratzean ohartu nintzen Monzonek *herri zaharrak* ezik Saseta eta Txikia, *herriaren izarrak* zituela aipagai. Alegia,

Harro hadi Kantauri itsasoa
ta haien betiko loa
betiko kanta zak
geroari esaiok olatuetan
*herri izarrak* ez direla itzaltzen.

Bizirik dagoen herri zahar honetako gaurko ikastoletan dagoeneko eta oraindik ez dira kantatzen itzali ez diren herri izar horien izenak. Eta kantatzen badira, extraofizialki kantatzen

dira. Harrigarria izan beharko lukeen arren, Kandido Saseta 36-37ko gudari antifrankista *avant la lettre* eta Txikia 1973an poliza frankistak hil zuen euskal independentziaren aldeko gudaria baitziren.

Herri zahar honetako eskoletan, ez bien izena elkarrekin eta ez batarena bestearena gabe ezin badira kantatu, Kantauri itsasoaren olatuek oraindik ere kulunkatzen jarraitu beharko dute herri izarren izenak daramatzan mezudun botila.

## Hirugarren minaren eztanda: Mattin lehendakari

Mattin Treku izan zen nire lehen lehendakaria. Bertso txapelketaren ostean, epai-mahaikoak lanean ari ziren bitartean, antolatzaileek ikusleei ere eman ziguten aukera gustukoen izan genuen bertsolariaren izena papertxo batean idatzi eta bozketa paraleloan parte hartzeko. Aitak nire esku utzi zuen hautua eta Ahetzekoaren izena idatzi nuen nire haur idazkera baldarrarekin.

Ez dakit zenbat urte nituen orduan. Nire gogoan 7-8 urte izan behar nituen. Ez dut oroitzen bertsorik eta ez zait iruditzen ezer ulertu nuenik bertsoarekin izandako lehen kontaktu hartan. Nire lehen esperientzia demokratikoa izan zela esatea maite dut. Gaur egunetik begiratuta iruditzen zait ez zela oso ohikoa izango ikusleek hautaketa batean parte hartzeko aukera izatea. Frankismoaren gordin-gordinean, norberak bere iritzia ematearen ekimen xume eta subertsibo horren zentzua eta garrantzia handitu egiten dira gaur egunetik begiratuta. Bertso ekitaldiak zelatatuak ziren, zentsura ez zen urruti ibiltzen...

Lehen kontaktu horren ostean, bertsolaritzari, Zuberoako kantagintza goraipatuari bezalatsu begiratu izan nion: ulertzen ez

duenaren bekaizkeriaz eta etsipenez. Eta bakartasun sentimendu handiz. Ez bainuen nire inguruan antzematen ni bezain galduta sentitzen zen inor. Denek egiten zuten irri eta txalo bertsolariekin eta denak ziren hunkitzen Bereterretxeren kantoriarekin, niretzat hor kontatzen ziren gauza asko batere argi ez zeudenean.

79-80 ikasturtean Deustuko Paraninfoan antolatutako bertso-saio batek ireki zizkion belarriak, artean nintzen belarri-motz klandestino eta lotsatuari. Oholtzan hiruzpalau bertsolari... Lazkao-Txiki ote zegoen tartean, Xanpun bai, Amuriza? Ezingo nuke esan ziurtasun erabatekoz.

Hantxe nengoen bada, bertsolariak entzuten, ezer aditu gabe. Gai-jartzaileak bertsolariak puntuka jarri zituen arte. Orduan izan nuen errebelazioa.

Hiru hunkiduren misterioa deitzen diot nik: 1) Puntuko ariketaren mekanismoa ulertu nuen: batak bertsoa hasi, beste biek nola-hala segida eman, eta hasi zuenak, lehena izateak emandako abantailarekin borobiltzen zuen. 2) Bertsoaren mekanismoa ulertuta, bertsotan kantatzen zutenaren mamia ulertzen nuela ohartu nintzen, esfortzurik gabe, basamortuan oasira iristean ur freskoa edaten ari bainintzen. 3) Bertsolaritza beraren mekanismoa ulertu nuen, kontakizuna, puntuak, neurria, doinua (beranduxeago ulertu nuen zer zen «arrazoia»). Nolako zoriona!

Pako Garmendia zen garaian ni inskribatuta nengoeneko Soziologia fakultateko erretorea. Donostiako Irakasle Eskolakoa ere bazen aldi berean eta bi postuak betetzen zituen Azpeitia-Donostia-Bilbo-Azpeitia ibilbidea eginez egunero. Bertso-saioa amaituta bere autoan abiatu ginen Donostiara (Xanpun ere autoan zihoan irudipena dut). Zoriontsu nengoen. Zerbait gertatu zen nire baitan. Ebaki bat osatzen hasi zitzaidan sentimendua

nuen. Nire iraultza kopernikarra izan zen, euskararen eguzkiaren inguruan itzulika hasi zen nire planeta ordura arte higikaitza.

## Laugarren minaren eztanda: Kantu bat gara

Donostiako Belodromoan martxoaren 5ean Jon Maiak egindako saioaren inguruko hausnarketen aurretik, tokiari buruzko aipamen batzuk.

Leku enblematikoa da hura. Politika arloa aipatzen da, eta egia da Maiak bere poema bilkura politiko batean irakurri zuela, baina niretzat Belodromoa, batez ere, kulturaren agertoki nagusia izan da. Belodromoa, niretzat "24 Orduak Euskaraz" haren tenplua izan da.

Halabeharrez, Berria egunkarian (16.03.30) Elixabete Garmendia Lasak artikulua eskaini zion 1976ko martxoaren 27an ospatutako ekitaldiari. Artean ez ziren 40 urte igaro Euskal Herria behin betirako mendean hartzeko asmoz, euskara eta euskal kulturaren aurkako azken erasoaldi erraldoia hasi zenetik. Garmendiak Iñigo Aranbarriren hitzak ekartzen ditu Belodromoan antolatu zen jaialdiaren berri emateko: «*Hamaika mila lagunen gorek eta oihuek behin eta berriz eteten dituzte Laboaren, Leteren, Knörren kantuak. Ikurrinak ateratzen dira jakapetik deiadarren gainean astintzeko...*». Aranbarrik aipatzen dituen harmailetako globoak ez ditut oroitzen, bai ordea hango giro elektrikoak nolako eragina izan zuen orduan nintzen 14 urte bete gabeko nerabeagan.

Beste berrogei urte igaro dira geroztik. Belodromoko ekitaldi hark bi aro banatu zituen. Ordukoa, beldurra astintzen ari zen herri baten oihua izan bazen, geroztikoek erakusten digute

zenbateraino bete diren eraikin obalatuan gainezka egin zuten ametsak eta utopiak. Ez da soilik oraindik ez dugula Euskal Herria askatu, baizik eta ekitaldi horren aldarri nagusia gauzatu ez eta gauzatzeko itxurarik ez duela ere.

24 orduak euskaraz bizitzea zenbateraino den helburu (zenbatek duen helburu) ere zalantzan jarriko nuke. Ohitu gara gaztelania eta frantsesarekin bizitzen. Ikusi dugu euskarak, hinki-hanka bada ere, bizirauteko indarra ateratzen duela... inondik. Beraz...

Harritu egiten da Garmendia ekitaldi horren efemerideak ez duelako oihartzunik izan. Arrazoiak asko izan daitezke. Nagusiena, nire ustez, Franco hil eta lau hilabetetara ospatutako ekitaldi hura bultzatu zuen izpiritua eta gogoa ez dela inon gauzatu. Ez dugula efemeride hori oroituko duen instantziarik, ez instituzional edo ofizialik, ezta kaleko edo herritarrik. Sarrionandiak «Lapur banden etika ala politika» mintzaldian aipagai dituen Oinaz eta Ganboarenagatik? Edo batzuek Oinazera abiatu eta segituan Ganboarako bidea hartu zutelako agian? Ez bada Oinazera joaten tematu zirenek Ganboara abiatu zirenen kidetzarik gabe ezinezkoa zutelako helburua erdiestea?

Iritsi gara Belodromora. Martxoaren 5a. Bertan ez zeuden berrogei urte lehenagoko 11.000 pertsona baizik 8.500 (baina beste milaka batzuk gehiago ere izan ziren ekitaldia zuzenean jarraitzeko aukera izan zutenak). Aldea kopuruan ez ezik ekitaldiaren izaeran ere badago. Duela 40 urtekoa ez bazen hautu politiko zehatz baten ekitaldia izan, Otegiren ongietorrirako antolatutakoa ohiko mitina ez izan arren, politikoki lerratutako jendarte bati begira asmatua izan zen. Eta inguru horretan, oihu, aldarrikapen, bandera, kanta, dantza eta enparauen erdian, testua. Jon Maiaren poema.

Maiarena ez zen poetikoki zuzena izan. Poesiari buruz dugun irudiaren aurka-aurkakoa baizik. Poesia, leku txikitan, taberna-zulo, herrixka, liburu-denda elitista edota Gaztetxetan gutxi batzuek (ustez) gozatzeko eta (agian) ulertzeko artetzat baitugu.

Eta hara non, garai bateko bertsolaritzaren eta ekitaldi herritar eta politikoen agertoki mitikoan, Jon Maia bertsolari, kantari, nobelistak performancea eskaini zuen. Bakana eta errepikaezina. Eta agian (zubererako adieran) bide urratzailea. Milaka jenderen aurrean irakurritako poema horren inguruan izandako ika-mika gorabehera, Maiaren ondoren entzulegoaren zirrara eragingo zuen beste poema bat irakurtzea bai izango litzatekeela erronka ederra!

Nik ekitaldiaren biharamunean, etxekoei deitzerakoan izan nuen Maiarenaren berri. Arrebari bezperako Belodromoko ekitaldiaz galdetu ahala Maia ekitaldiko «izarra» izan zela esan eta grabatuta zeukanez haren ekitaldia entzutea proposatu zidan.

Maiarenak sortutako harriduraren frogatzat har daiteke, kazetariek izendatzeko izandako zailtasun eta zalantzak: «un texto recitado», «el texto fue concebido para ser leído en directo y ante un público muy numeroso».

Egunkariak ohiko atzerapenez iristen hasi ahala, ohartu nintzen bazegoela nolabaiteko eztabaida Maiaren poemaren inguruan. Eztabaidaren nondik norakoa ulertu nahiz galdezka hasi eta jakinarazi zidaten sarean ika-mika gordina zegoela. Sarekoak inprimatuta jaso, irakurri eta... ohartu nintzen eztabaida (niretzat) harrigarri eta itsusi xamarra (banderizoen artekoa beste hark esango lukeen moduan) korapilatu zela sarean.

Arestian esan dut «Kantu bat gara» «poema recitado» hori bakana eta errepikaezina dela. Ez da oso ohikoa izaten ere egunkari batek bere erdiko orrialdeetan poster moduan poema bat argitara ematea. Lekuz kanpo zegoela pentsatuko duenik egongo da, noski. Nik ordea nahiago dut gertakariari begiratzea, urruneko betaurrekookin eta ikuspegi positiboz. Nik ez dut esaten orain poema guztiak «masen» aurrean irakurriak izateko moduan idatzi behar ditugunik. Ez zait ordea ikuspuntu txarra iruditzen «masen» aurrean *ere* irakurriak izan daitezkeela pentsatzea.

Ez zait ajola hainbeste Maiaren poemaren zuzentasun politiko-poetikoa, baizik eta Maiaren poemak (agian) ireki duen aukera; poeta-kideek erabil dezaketena edo ez.

Gero eta poesia emanaldi gehiago antolatzen da Euskal Herriaren luze zabalean. Poesiak, hitzaren arteak duen indarra, komunikatzeko gaitasuna, poetak bere buruari eta irakurle-entzuleari jartzen dion exijentzia maila, aztertzekoak dira, eta mugatzen ibili beharrean, alor berrietan askatasunez esploratzeko garaiak direla (berriro) uste dut. Joxanton Artzek frontoi eta areto handietan eskaintzen zituen poesia errezitaldiak gogoan.

«Bertsolari» batek asmatu du jendetza baten aurrean poema bat irakurri eta berau hunkitzen.

Maiaren «idazki errezitatuak» eragin dituen haserre eta kontrakotasunen atzean poema horren irakurketa arrakastatsua gainditzen duten aurrekariak daudela iruditu zait.

Esan izan da euskaldunok oso hotzak garela, gure sentimenduak erakusten ez dakigula. Are, harrotasunez ere aldarrikatu izan dugu kanpora begirako gure jokabidea, hegoaldeko herrialdee-

takoak askoz ere erakustaldi sentimentaletara emanagoak direla azpimarratuz, hunkitzeari dagokion desberdintasun hori gure herri izaeraren bereizgarria indartu eta independentzia eskatzeko eta bere alde borrokatzeko argudio gehigarria bailitzan.

Beraz, zortzi minutu horiek isil-isilik entzun nituen, jendearen zirrara ere iritsi zitzaidan uneren batean. Deustuko Unibertsitateko Paraninfoan bertsolarien aurrean bezala, hiru bider hunkitu nintzen: 1) Poemaren indarrak, eta aipatzen ziren kanta zatiek nigan pizten zituzten oihartzunen eraginez. 2) Poema batek jendetzaren aurrean horrelako eragina lortu izanagatik. 3) Poema hori euskaraz zelako, sumatzen bainuen Belodromora bertaratutako guztiek ez zutela euskaraz jakingo.

Garai berriak iristen diren bakoitzean, gutxiegi azpimarratzen den kontua da aldaketa norberagandik hasten dela. Aldaketa ez da belaunaldi batek hurrengoari lekua (eta «marroia») uztea, baizik eta borrokaren bidez sortutako ñabarduraz betetako egoera berrira norberak bere burua egokitzeko egin behar duena.

Azken garaiotan, sentimenduei, harremanei eta hunkitzeari buruzko hausnarketa, eztabaida eta aldaketa ere nabari da. Poetek badukete horretan zer esana. Agian, badute aldaketa horretan nola lagundu. Ez naiz ausartzen esatera hori dutela betebeharra... Norberak egin dezala gura duena.

Beste euskal preso politikoengandik bakartuta naukate, lerro hauek idazterakoan azken 51 egunetan. Hala ere, ikustaldi eta gutun bidez izaten dut aukera nire kezkak eta hausnarketak helarazteko. Poesiari buruzko «eztabaida» baten ondoren, honokoa erantzun zidan gutun-kideak:

"*Ez al du poetak hitz-jokoarekin (bat-bateko oroitzapenetik hurbil egon daitekeena), plazer hutsa den eztandatxoa eragin nahi, txinparta, hasieran irakurleari ulertezin egiten zaion hitzari begira egon eta aurkitzen duenean sortzen den hori bilatzen? Hitzaren zentzu berriak, izan hitz bati zerbait gehitu edo kendu diolako, edo beste hitz batzuk alde edo kontra jarri dizkiolako? Asoziazio fonetikoak izan daitezke ere, eta horrek ordura arte egin gabeko loturak egitera eramaten du poemaren munduan murgildu dena. Ikuspegi desberdin bat sortuz, hotsetan, pertzepzioan oinarrituta dagoelako. Poetak hitzak objektu bezala erabiltzen ditu, bere iragan zurrundutik askatu eta moldatzen ditu. Motz ditzake, eralda, inoiz ukitu ez duen beste hitz bati lotu eta gazta ireki bat bezala (izan gaitezen artzain) eskaini, beste mami bat erakusteko, etorkizun berri bat eskaintzeko hitzari*".

## Beste mina batzuen eztanda: Belaunaldi baten porrota?

Desberdina da igande goizeko Txindokirako txangoa edo Amerika zenik ere jakin gabe Indietara abiatu zirenen bidaldia.

Txindokira doanak, eguraldia izan dezake aldagai, edo bere sasoia, bezperan gaupasa eginda badago.

Joseba Sarrionandiaren "Lapur banden etika ala politika" saioan erreskatatzen du Miguel de Cervantesen La Gitanilla nobelako esaera: «*Tal piensa ir á Oñaz y da en Gamboa*». Alegia, Oñazera abiatu eta Ganboara ailegatu. Indietarainoko itsasozko bidea irekitzen saiatu zirenek bi akats egin zituzten: lurraren azalera uste baino handiagoa zen eta tartean -eta eskerrak, bestela ozeanoaren erdian hilko ziren- harako bidean oztopo egiten zuen kontinente batekin egin zuten topo eta tupust, beren hasierako asmoak atzeratu eta are aldatu egin zituenak. Beraienak soilik ez, noski, munduarenak ere.

Batek badaki zergatik hartzen dituen erabakiak, zergatik abiatzen den bidaldi edo abentura batean. Norberaren arrazoi edota bulkadak ez dira beste inorenaren berdinak. Baina ontzian sartzea erabakitzen duten momentutik, helburu komun bati buruz zabaltzen dituzte oihalak, egiten dute arraun eta sutzen dituzte kanoien eta arkabuzen mukiak.

Sarrionandiak balantze kritikoa egiterakoan duela hogeitaka urte Euskadiko Ezkerrakoei oparitutako «nahi ez genuen ia guztia lortu dugu» zorrotza oparitzen dio bere buruari. Eta Cervantesek bidazti erratuaz aritzeko erabili zuen Oñazera abiatu eta Ganboara iristearena ere, Euskal Herriaren askatasunaren aldeko borrokari buruz ari delarik. Ganboa Oñazen antipodatzat hartzen bada, ez dut uste zuzena denik irudipen hori. Niri iruditzen zait gehiago Oñazerako bidean Ganboa agertu zaigula. Colon eta enparauei Karibeko irlak bezala.

Porrotak norbanakoarenak izaten dira; garaipenak aldiz taldearenak. Espainiako kartzelatan hiru hamarkada inguru pasatu ondoren, Euskal Herrira itzuli den gudariak buru-bihotzez «merezi izan du!» botatzen duenean, nork esan behar dio ezetz, ekibokatuta dagoela? Esan nahi dudana da, oso pertsonala dela norbera borrokan engaiatu zenean zituen asmo, amets eta baldintzapenak. Eta borroka luzatzen den heinean, gurean bezala belaunaldiak bata bestearen atzetik lotu direnean, eta batzuetan elkarrekin borroka egin dutenean (egun berean hil ziren Jose Luis Arrieta Zubimendi 'Azkoiti' eta Olaia Kastresana, bata Okzitaniako Tolosan, bestea País Valenciàko Torrevieilhan; berrogei urte adin diferentzia zutela, biak borrokan), nola adostu gauden Ganboa hau abiatu ginen Oñaz horren antipodetan dagoela?

ESTALIEN GRADOko pasarte batean, horrela esaten dio Niketzek Edgarri: «*Luma-Gorritarrok galdu egin diagu gerra*». Eta aurrerago, «*Gure nazio non-nato honek ez zian hainbeste ahaleginen laurdenaren laurdenik ere merezi, hainbeste milaka kartzela- eta erbeste- eta hagorantze-urte*». Eta Edgar alter egoak laguntzen dio: «*Eta odol-urte...*». «*Bai. Eta odol-urte*», onartzen dio Niketzek. Edgarrek ordea zorrotz hartzen du Niketz: «*Kontuz gero... Ez duzu eskubiderik (…) zeure gorabehera partikularrak belaunaldi oso batenak bailiran bezala estigmatizatzeko*».

ESTALIEN GRADORA poema-antologia antzeztu honetan, egileak konstatatzen du ez garela «*Volgaraino iritsi, baina borrokatu gaituk, ahalik eta zorrotzen, ahalik eta zuhurren...*». Ez dugu helburua lortu, «*baina hurbildu bai, hurbildu gaituk*».

Bere ustez politika zer den azaltzen duen pasarte eder batean Sarrionandiak dio politika ez dela «*parlamentu edo gobernu urrunean produzitzen dena, baizik eta batez ere pertsona bakoitzak egiten duena ezarri zaizkion baldintzetan. Politika eguneroko bizimodua da batez ere, atentzioz eta pentsamendu kritikoz bizitzea. Etxean edo kalean, lanean edo aisian, herrian edo atzerrian, dena aktiba daiteke politikoki. Bertsolaritza politikoa da, eta zinema egitea ere politika egitea da, etxe bat erostea politikoa da, eta lanera oinez joatea ere bai. Politikaren bahitzaileek sinetsarazi nahi digutenaren kontra, dena da politikoa*». Eta bertsolaritza eta zinema politika egitea diren heinean, politika egitea ere da poesia. Politika egitea zen bertso-saio eta kantaldiak antolatzea frankismoan. Politika egitea bertso-saioak antolatzea Jesuiten Deustuko Unibertsitatean. Politika egitea poema bat irakurtzea mitin politiko batean. Eta politika egitea ere da ezarri baldintzak aldatzen saiatzea, geure buruari onartutako baliabide eta baldintzapen zorrotzekin. Horretan aritu gara eta horretan ari gara.

Akhmatova poeta errusiarrak poema lazgarri eder bat du, non azaltzen duen semea ikusten saiatzeko kartzelako ilara luzean zain dagoela, emakume batek ezagutu eta galdetzen diola: «*hau konta dezakezu?*». «Bai» erantzuten dio. Zer egin dezakegu besterik poetok, ahalmen hori dugularik, gertatzen dena, gertatzen ari zaiguna kontatzea baino? Oñazerantzko amaigabeko bidaian Ganboaraino iritsi omen garen honetan, ezarri baldintzak aldatzen jarraitzeko poesia egiten jarraitzea baino?

Hara zer dioskun Ekhine Eizagirrek Fresneseko ziega batetik:

*Bestea besterik ez bezala*
*nahi gaituzue.*

*Zuen kate estuek*
*lurraren kontra ekarri dute*
*gure balantza,*
*zuen aldeak*
*zerua ukitu duen bitartean.*

*Gure kontura bizi zarete.*
*Gure kontura eraiki duzue*
*zeuen zerua, eta han goian*
*bizi omen den indar orojakile*
*gailenezin baten izenean*
*zapaltzen gaituzue.*

*Baina bagara*
*besteaz harago*
*gugan sinesten dugunak.*
*Bagara*
*diru gabe, aberats*
*arma gabe, indartsu*
*botere gabe, ahaldun.*

*Zuengatik gara bestea,*
*zuengatik feministak.*
*Zuengatik gara itzal,*
*zuengatik sorginak.*

*Itzaletik, irabazteko grinaz,*
*egingo dugu hegan*
*kateak su goritan urturik.*
*Hegan denok batera,*
*balantzaren alde gorenak*
*lurrean jar ditzan oinak.*
*Hegan denok batera,*
*bestea ez ezik*
*izan gaitezen*
*guk nahi duguna.*

*Réau, 2016ko apirila*

**Idazle hauen (nahigabeko) laguntzarekin:**
*Anna AKHMATOVA (eta Josu LANDA)*
*Gabriel ARESTI*
*JoxeAuxtin ARRIETA*
*Joxanton ARTZE*
*Ingeborg BACHMANN (eta Nagore TOLOSA)*
*Andoni EGAÑA*
*Ekhine EIZAGIRRE*
*Hedoi ETXARTE*
*Elixabete GARMENDIA (eta Iñigo ARANBARRI)*
*Maixol IPARRAGIRRE*
*LAZKAO-TXIKI*
*Jon MAIA*
*Telesforo MONZON*
*Joseba SARRIONANDIA*
*Mattin TREKU*
*XALBADOR*
*XANPUN*
*eta*
*MATALAZ eta ATHARRATZEKO JAUREGIAN kantuen sortzaileak*



**Alfontso Etxegarai Atxirika**
1958
Plentzia

1985ean, Quitora (Ekuador) deportatua. 1986an, Sao Tomera (Afrika).

Argitaratuak ditu *Regresar a Sara: testimonio de un deportado vasco* (Txalaparta, 1995) eta *Hitzezko txalupak* -Josu Martinezekin batean- (Elkar, 2011).



CX postal 328
Sao Tome
R.D.S.T.P.
Afrika
etxe@cstome.net

## La guerra del 58

Mirando al calendario que cuelga en una pared de mi residencia: un apartamento del Estado santomense, convertido en confinamiento privado; veo que la fecha del 27 de setiembre está acompañada de una estrella revolucionaria, recordando que es el día de los gudari vascos. "Hoy es mi día", me digo, aunque sea una fecha en la que se tiene en cuenta sobre todo a los gudari muertos en la lucha, esa lucha que llamo "Guerra del 58" y que acabó, o fue dada por terminada, con la declaración de ETA diciendo que suspendía definitivamente la "confrontación armada" (20 de octubre de 2011). Al menos acabó unilateralmente. En dicha declaración, y por primera vez, la organización vasca pedía apenas un "diálogo sobre las consecuencias del conflicto", dejando pues en otro plano los motivos o la fuente del conflicto. Y ahí me veo y veo a mis camaradas de lucha, en cárceles y el exilio, cumpliendo pena o corriendo el mundo ilegalmente después de que la *Guerra del 58* haya acabado ¿Sería a eso que, entre otras cosas se refirió tal declaración? La verdad es que los gudari ex combatientes somos una consecuencia de esa guerra, como lo son todos los soldados ex combatientes en todas las guerras acabadas.

Algunos pensarán que exagero cuando llamo de esa manera al conflicto armado, sostenido entre ETA y el Reino de España; como pensarán que llamar gudari a unos voluntarios, que tomaron las armas para luchar por la independencia y el socialismo vasco, es también discutible y que lo justo sería llamarles terroristas. Cada uno sabrá porque llama a ciertas cosas de una manera o de otra, en eso estamos de acuerdo; pero yo no iba a creerme que, tal y como estamos enfrentados y dada la hipocresía en que vivimos, el Reino de España y sus fieles dirigentes

llamasen su lucha contra la independencia vasca de otra manera que "Lucha contra el terrorismo". Sobre eso podríamos entablar una discusión y no llegar a razón alguna; pero probaría que conflicto político hay, y que, acompañado de muertos, sólo puede calificarse de guerra: contra la tiranía del Reino de España, para una parte, y contra el terrorismo vasco, para otra parte.

Entre tanto, pienso que es otro día más para sobrevivir alejado de mi tierra, eso sí, y que son tantos días como treinta años de deportación en esta isla africana de São Tomé, donde me confinaron autoridades francesas, españolas, ecuatorianas, portuguesas y santomenses. Fue un viaje largo y de algunas peripecias, claro, sin pasaporte ni billete de avión, aunque viajara con varias compañías y atravesara fronteras y continentes como si tuviera carta blanca por ser quien era. Al cabo del tiempo y tras varias escalas me "depositaron" en África, como una mercancía, bien acompañado por policías y militares acostumbrados a las prácticas de guerra ¡Prácticas de guerra!.

¿Prácticas de guerra?

Al final, de esto se trata: seguir o no seguir con las prácticas de guerra… entre los fieles dirigentes del Reino de España y los fieles gudari vascos. Nosotros nos hemos retirado de ella; hemos declarado que se ha acabado y hemos dado inicio a la desmovilización. Pero no ha habido el simbólico beso de la paz, como se daban arzobispos y reyes, cuando masacraban por el poder; o el no menos simbólico apretón de manos de la Habana entre colombianos, cuestionado por una parte de la población en un plebiscito.

No hemos conseguido ganar la guerra ni transformarla en paz con acuerdos, o sea que no está escrito en ningún documento que la otra parte abandone las prácticas de guerra o se desmovilice como nosotros. Eso me ha hecho dudar a veces sobre este final o retirada de la guerra, más sobre el modo que sobre la decisión en sí: Desmovilización, Desmotivación, Desmembramiento… Las tres "D" que encantan a los intermediarios que juegan a poner fin a enfrentamientos, presionando a la parte más débil.

Cuando me han llegado recados insinuando que si sigo aquí, en esta isla maravillosa de África, es porque me gusta o porque me da miedo volver a casa o porque no soy bastante listo para hacerlo… he sentido pena. Dicen que mis prácticas de guerra o las acciones en las que he participado ya han quedado archivadas, fuera de tiempo, y que basta con ir a una embajada española para pedir documentos y volver a casa. ¿Será verdad que no soy lo suficientemente listo para subirme a ese tren de la vía legal?.

Bueno, yo diría que no tengo obsesión por volver, es decir: deseo de volver a un sitio en el que ya fui feliz. Confieso que se trata más de una necesidad vital o algo así, lo de volver, y que tengo una prisa que todavía no me causa angustia. No volvería para "sentirme feliz", porque la felicidad es algo que nunca paramos de buscar, en el sitio que sea. Quiero volver porque de una guerra, si no se muere en ella, se vuelve sí o sí, (y porque tengo otros compromisos para asumir y objetivos para realizar, de los que siento que hago parte; aunque eso sea otra historia). Dije un día que sólo volvería cuando el último de los camaradas presos saliera de la cárcel, a lo que los amigos me pusieron cara de extrañeza o incomprensión. ¿Pensaron que me había

"radicalizado"? No, no lo dije como si me creyera el viejo Agirre (Koldo Izagirre, "Nuevas prisiones del viejo Agirre"), para el que filtrarse en la cárcel española, por un túnel, significa la libertad de luchar ("¿Una libertad que la libertad le negaba?"). Lo dije en solidaridad con los compañeros, para los que "volver" es un sitio todavía muy lejano y difícil, y porque pienso que para mí también lo es, aunque hayamos acabado la *Guerra del 58*. También lo dije porque defendimos que volveríamos a casa cuando hubiéramos ganado la guerra, siendo libres y no apenas felices. Cosa que no ha ocurrido, pues solo nos hemos retirado de ella.

La *Guerra del 58* no ha sido como aquellas guerras de los del barrio contra los veraneantes, con armas que sabíamos que no mataban. Nuestros arcos y flechas no hubieran defendido el castillo de Butrón, por muchos brazos que tuvieran; ni mucho menos derribado a caballeros cruzados atravesando, al galope, las campas de detrás del instituto. Y aquellas batallas de adolescentes acababan sin odios verdaderos: soldados de uno y otro bando nos encontrábamos luego en las fiestas de sanantolines, sin problemas, en el jolgorio de las músicas y de las cadenetas.

Cuando crecimos nos reímos de los arcos y las flechas, y algunos pensamos en otras cosas como la tiranía española. Ahí llegaron los muertos y las muertes de verdad, para siempre, con huellas… Ahí llegaron las ideas revolucionarias de cambiar el mundo; de acabar con los tiranos y sus prácticas de guerra, tomando también las armas. Ahí nos hicimos gudari, algunos para siempre y hasta la victoria. Entre pasos de "muga" (frontera), por la noche y bajo las estrellas, aprendimos a ser revolucionarios y leímos "Yo tuve un hermano", de Cortazar, un hermano "Que iba por los montes mientras yo dormía", porque éramos vascos y de otros lugares remotos donde las peleas por la libertad de los pueblos sangraban…

De una guerra así no se retira uno de cualquier manera, mucho menos cuando te queda la sensación de que los últimos años fueron corriendo como si se "luchara en retirada". Y se arrastra la idea de haber perdido, aunque en el pensamiento guardemos una hoja en blanco para escribir que acaso obtuvimos una victoria que no habíamos soñado. Se recuerdan muchas cosas que habíamos dicho y que no hemos cumplido, claro, o ahora se ven los errores que antes no veíamos. Lo peor es que no son como las guerras de arcos y flechas, aquellas de nuestra adolescencia, ya que entramos como jóvenes llenos de sueños y salimos como hombres rotos.

Para algunos compañeros es una decisión discutible, contradictoria, esta de usar la vía legal que está basada en leyes que no reconocíamos hasta hace bien poco, por ser del enemigo. Se nos pide cumplirlas y asumir las condenas que se nos apliquen; las leyes y las condenas como se aplican a los presos y delitos comunes, cuando era una especie de orgullo y argumento a nuestro favor que nos aplicaran leyes y sentencias especiales. Una cosa es retirarse de la guerra; otra cosa es como hacerlo si no hay un diálogo sobre el motivo de la misma. La *Guerra del 58* acaba, pero el conflicto no.

Mirando al calendario que cuelga en una pared de mi residencia: un apartamento del Estado santomense, convertido en confinamiento privado, cuento también los días que han pasado desde que envié un mensaje a mi ex enemigo. Sí, finalmente decidí usar la vía legal para salir de la situación de treinta y un años de deportado, o sea que nada de prácticas de guerra. Parece que es el camino que nos queda a todos los gudari ex combatientes, estemos en cárceles o en el exilio. Digo que "parece" porque es lo que se ha consensuado entre una gran parte de la militancia para salir de la guerra. Es pues una consecuencia de la decisión

de poner fin a la lucha armada o "lucha ilegal", la que me ha llevado a esta decisión; no porque sea o parezca una solución de nada, que no lo es, creo yo, y aquí algunos compañeros tienen razón. Nos hemos retirado de la guerra y nuestro antiguo enemigo no quiere ver que las cosas han cambiado ¿Hasta cuándo? ¿Contarán los treinta y un años de deportación, una condena sin sentencia ni juicio, para algo?

Qu'est ce que vous foutez là?

C'est fini la guerre!

Retournez à vos foyers S.V.P.

*São Tomé*

## ZZB... y un puente de piedras

Imagínate…
Dos continentes
Somos orillas que hacen un puente.

Imagínate…
Un viejo puerto
Una farola donde se refugian los vientos.

Imagínate…
Somos las hojas
En un árbol grande que el viento mece.

Imagínate…
Las camaradas
Nuestras miradas que te dan alas.

Imagínate…
Hoy es tu día
Colinas de piedra, paisaje sin agua y lluvia de estrellas.

Imagínate…
Cosas que amas
Que ya se han perdido y vuelven nuevas en las mariposas.

Imagínate…
Que hoy es tu día
Todo es un sueño de amores y luchas.

Imagínate…
Ese puente de piedras
Donde las Historias anidan sus letras.

*7 de Noviembre*
*São Tomé*



**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**
1958
Eibar

Atxilotze data: 2000ko urriaren 17a.

Liburu bi argitaratuak ditu:
*Ametsen txokoan bizi naiz* (Ataramiñe, 2011);
*Ainarak herrira itzuliko dira* (Ataramiñe, 2014);
*Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin* (Ataramiñe, 2016).



Centro Penitenciario Córdoba
14014 Córdoba

## Bost urte barru

1
Hamabost urte daramatzat itxita,
bost geratzen zaizkit libre hegatzeko,
hustuko ditugu esparru makurrak
atsegina egunero dastatzeko,
bitarte luzean astia izan dut
ziega barrenean sakon pentsatzeko,
herriko egoeraren arabera
tristuraz edo pozez oheratzeko.

2
Sentimendua letretan islatzen dut
horrelaxe aldiro abisatzeko,
zuekin prestuki batuko naizela
prezatzen zaituztedala aipatzeko,
joan ziren etxekoak ta lagun minak
gurekin egongo dira ospatzeko,
gogoan gara eurekin elkartuko
txalokatuz zirraraz ondratzeko.

*2015eko ekainaren 7an*

## Txori handien eta txikien harremanak

1
Txori handiak txori txikia
erabat du menderatzen,
erpeak zorrotz dituelako
etengabe mehatxatzen,
harroxko dio hegaldatzeko
eskubidea ukatzen,
jendartean lez mailen arteko
bereizketa inposatzen,
ez badu bere nahia betetzen
oldartzen zaio hertsatzen.

2
Hegazka nasai ari zelako
prestatu zion segada,
arbolan egon zen zain gordeta
jotzeko atzaparkada,
aginduei ez zielako
kasurik egiten jada,
kaiolan sartu zuen bultzaka
mozteko ziplo aupada,
tamalez hola aritzen baita
basapiztien armada.

3
Epaileak du mailua jaso
emateko ebazpena,
"ankerrak dauka", entzun diogu,
"gatazka honen hobena",
"izadiaren kontra basoan
burugabe ari dena,
txori ahula kateatzea
ez delako makurrena,
baizik habia zatikatzea,
kumeen itxaropena".

4
Espainia ez bada, Frantziak
herriak dauzka mututa,
eta "Nazio Batuen" ei den
"Erakundeak" zurtuta,
diglosiaren zingiran txarki,
bizi dira kamustuta,
euren hizkuntzak eta kulturak
hatsik gabe murriztuta,
ezin dutenez txiorik egin
lur jota daude histuta.

5

Airean lez nahi dugu irauli
egoera lur honetan,
izaki denak beldurrik gabe
egon gaitezen gauetan,
demokrazia zertu dezagun,
bakea lubakietan,
bizitza izan dadin munduan
zintzoa harremanetan,
belatz gorriak eta txepetxak
dagitzaten hegadetan.

6

Erakustea gura ditugu
luma nabarrak plazetan,
penak uztea susper dakigun
bizipoza arimetan,
zuzentzak izan dezan tokirik
zapalduen bihotzetan,
kolore more berdintzailea
izeki dadin senetan,
herri onberak hegan daitezen
libre goizeko printzetan.

*2015eko ekainaren 14an*

## Iragana, espetxea eta geroa

1
Lurrak biraka darrai ortzian
espetxean zaudenean,
kideak esan zidan umorez
etxartean geundenean,
iruzkinari erantzun nion
trostan ari nintzenean,
"ez da erraza konturatzea
murrutzar hauen barnean,
zu zarenean egon etzanda
urtetan oroimenean,
bihar maiteaz orduko xarma
piztea nahi duzunean".

2
Laztanak ziren garai jorian
eta gogoan geratu,
ezereztu ez den gatazkak dit
harremana besteratu,
nahiz ziegatik ohi dudan eran naiz
zeure txokorantz airatu,
sentimendua ezin dut orain
lehen lez azaleratu,
lore berriak beharko ditut
zeure zelaian paratu,
espetxetik at oro dakidan
bizipoza oneratu.

3
Iragana ez dut ahaztuko
nire bizitza delako,
akordatzeak on egiten dit
zurekin nagoelako,
ezin naiz bertan bizi ordea
izan ohi da kalterako,
alai zein triste aurrera beti
egin behar dugulako,
ez ditut gaurko kezkak lagako
konpontzeke gerorako,
maitasunaren kontuak berben
bidez ontzen direlako.

4
Gauak biluzik pasatzen ditut
desioen hariztian,
askatasuna zeure printzekin
jantz dadila goiztirian,
horretarako bihotza jarri
behar dut gozo abian,
goizean oroit naiz maitemindu
ginela udaberrian,
osteratxo genegitzala
maite dugun izadian,
ederki gara biziko arrats
oskorrien loraldian.

*2015eko uztailaren 12an*

## Izar gorriari. On Periko Solabarriari

I

Perikoren gizatasun gorria
erabat eredugarria,
arima borrokalari onbera
zapalduentzat abaroa,
jende xumeak babesten zituen,
txapela duinki zerabilen,
injustizia urtzea nahi zuen
xedea iraultza zelako.
Herri mugimenduen partaidea,
Elkartasunaren kidea,
bularrean zintzilik zeramatzan
bizitza ontzeko ikurrak,
gorputza lanean zaildu zitzaion
pobreen apaiza zenean,
Bertolt Brecht-ek maiz zioen moduan
ezinbesteko gizakia.

2
Utopia ez delako ipuin bat
militatzen laster hasi zen,
bere kemen zoragarriarekin
txokoa maitez zaindu zigun,
makuluekin salatu baitzuen
estatuen bortizkeria
langabeak babestu beharrean
jipoitzen dituen Ertzaintza.
Ezkerraldea zeure tailerra zen,
Euskal Herria etxaldea,
zeure izanak gidatuko ditu
gaurko gazte sentimentalak,
zeurekin hunkitu dira presoak,
iheslariak, beharginak…
amnistiaren garra zinelako
ongia zara on Periko.

*2015eko uztailaren 19an*

## Kartzela eta denbora

I

Kartzelan denbora erruz dugunez,
ederki baliatzen dugu,
kontua orduak eratzea da
pena ekinez leuntzeko,
zer egin hausnartzen aritzen gara
denetik zerbait egiteko,
behin gaitezkeenez bakarrik bizi
aukera zukutzen baitugu.
Egunak gogotsu darabiltzagu
atsegina txit sentitzeko,
baina ez ditugu nahi xahutzerik
gogoan herra sustrai dadin,
gatazka sutzen dabiltzanak antzo
bengantza egikaritzeko,
geure helburua amnistia da,
askatasunaren zirria.

2
Tarte bat erabili ikasteko,
gorputza kirolaz zailtzeko,
bihoztunen gutunak miresteko,
ametsak xarmaz islatzeko,
kafea kideekin edateko,
soak hitzekin alaitzeko,
eskulanak josi zein marrazteko,
aberriari kantatzeko…
hemen denbora dugu oldozteko,
sentiera oneratzeko,
irudimena ziegetan pizteko,
ilusioak mamitzeko,
maiteari desirak esateko,
ortzadarra erakartzeko,
biharko goizak aurreikusteko,
zuen babesa eskertzeko.

*2015eko abuztuaren 16an*

## Sorkuntzaz zertzelada batzuk

1
Sorkuntzak Ama-Lur du
dotore laudatzen,
maitaleen lilura
ñir-ñir deskribatzen,
agintari makurrak
ditu kritikatzen,
egoismoa eta
gerrak deitoratzen,
kartzelak preso barik
sakon desiratzen.

2
Etorriaz zirrarak
inguratu zaitu,
bulkada batek dizu
bihotza goritu,
odolak bat batean
ganbara bizitu,
olerki batez zara
gauean erditu,
bizinahia txit zaizu
sorkuntzaz goititu.

3
Ederra da sorkuntza,
zerbait asmatzea,
ideiak ekarrita
obra bilbatzea,
musak esan dizuna
artez gauzatzea,
orrian paratzea
eta sinatzea,
maiteari jarraian
errezitatzea.

4
Irudimena dantzut
deika ohatzean,
taupadak danga dira
hasi arratsean,
sentimendua bor-bor
dabil laratzean,
musa sartu delako
berben baratzean,
bertso-uzta dezadan
batu esnatzean.

5
Herriak nahi duenez
zinez berrikuntza,
garunean ari zait
ernatzen sorkuntza,
hitzekin altxatu du
zuzen eraikuntza,
barnean senti dezan
laster hobekuntza,
igo dakion libre
paretatik huntza.

6
Euskara noizean behin
txeraz dut ondratzen,
zor diodan arreta
idazten kitatzen,
zelai larua nabil
naro ureztatzen,
tantanekin dizkiot
nekeak gozatzen,
kartzelan atseginez
sorkuntzak opatzen.

*2015eko irailaren 20an*

## Roberto, Xabiertxo, Espe, Jokin, Felix, Sua, Josu, Azkoiti, Mikel... eta gainerakoei

I

Kardantxiloak udaberria lez
askatasuna gura zenuten,
ihintzak eguzki-lorea beste
herri zaharra zipriztintzea,
nahiz bakarrik behin bizi gaitezkeen,
borrokan zentzuz hasi zineten,
patxada urrituko zitzaizuen
xedea ez zen nolanahikoa.
Lehia injustiziaren kontra zen,
eskubideak ziren helmuga,
sastrakak nonahi egon zitezkeen
urratsak minki ezerezteko,
era askotako gertakizunek
bihotzak hautsi zizkizueten,
zuen taupadak baitan dantzuzkigu,
sentimenduak bizitzen ditu.

2
Eibarren ez zarete ilunduko
oroimenean dir-dir zaudete,
atsegina sakon sentitzen dugu
zuen irria gu garelako,
herrian, kartzelan, zein erbestean
zinez zarete geure arnasa,
lurraldea maite zenutelako
itxaropenak kulunkan dirau.
Arraten pagoak mardulik daude,
loria gertu sumatzen dute,
iretargia keinuka hasten da
zelaian batzen zaretenean,
kateak moztea nahi zenituzten
hesirik gabe bizi gintezen,
izpiak zuentzat izango dira
bake duinaren argisentian.

## Ezpelari, Aritxulegiri

1
Ezpelak dantzuzki goizik
txoritxoen kantuak,
ondo ezagutzen ditu
naturaren kontuak,
txikiak dauzka loreak
oboideak fruituak,
hostotxoak larrukarak
eta oposatuak.

2
Ezpela da sendoena
halaber malguena,
mendialdean dagoen
heskairik politena,
udaran eskaintzen zidan
alboan atsedena,
bikain kitzikatzen zuen
neure irudimena.

3
Ezpela nuen Arraten
aspaldian haztatu,
gurutzean eserita
zin-zinez estimatu,
kartzelan nagoenetik
ez baitut ikuskatu,
ezin naiz lehen bezala
berarekin mintzatu.

4
Ezpelaren zur gogorra
txistuaren hodia,
eskulangile trebeak
darabilen ekaia,
Ama-Lurrek sortu zuen
ederkiro bitxia,
sakonki senti dezagun
artelanen magia.

5
Ezpelaz jantziko dugu
garbi oroitzapena,
samurtasunak ordezka
dezan oraingo pena,
guardia zibilek zuten
burutu hondamena,
haritzak erauziz mindu
ziguten sentimena.

6
Berdin zaigu gorostia,
haritza zein ezpela,
mendian gura ditugu
oroitzea horrela,
garai berria ez dadin
izan inoiz ustela,
joan ziren herritar minak
irain ez ditzatela.

7
Ezpelak haziko dira
lurraldeko landetan,
ekaitza atertuko den
egun oparoetan,
kemenak konponduko du
gatazka herrietan,
atsegina lora dadin
naroro bihotzetan.

8
Ezpela izan dadila
bakearen sustraia,
azkeneko gerratik hil
direnen euskarria,
Aritxulegira berriz
helduko da loria,
krabelin gorriek goza
dezaten ostargia.

*2015eko azaroaren 1an*

## Ataramiñeri esker onez

1
Ataramiñen daukate
baratzea loretan,
uzta bilketa dagite
aldiro kartzeletan,
distira nabaritzen da
presoen ninietan,
obrak dakuskitenean
dotore kaieretan.

2
Ataramiñeko sortan
desiren oihartzuna,
plazetara iristen da
sormenaren lurruna,
Euskal Herria izango
denez askatasuna,
preso sentimentalak du
biribiltzen jarduna.

3
Ataramiñe ari da
kultura gerizatzen,
azpiratuen aleak
musu-truk inprimatzen,
bihoztunak hasten dira
gauerdian hegatzen,
ezlekutik lurraldera
ametsak garraiatzen.

4
"Sorkuntzaren magia da
sorgintzen gaituena!,
Ataramiñen diote
gozatuz sentimena,
akuilatzen dutelako
preso daudenen sena,
kartzelan non-nahi dabiltza
lantzen irudimena.

5
Ataramiñek bikain du
bere nahia zeratzen,
literatura txokoan
ederkiro sustatzen,
eskulanetaz da ere
egoki arduratzen,
kaieran urtero ditu
jator argitaratzen.

6
Artistak ez diren arren
maite dute artea,
laket zaie idaztea,
pintatzea, jostea…
Ataramiñen zabalik
dago beti atea,
osatzeko barrenean
lokabeen ostea.

7
Ataramiñen presoak
daude kilikatuta,
halaber musen zoruan
erabat askatuta,
Durangon egoten dira
azokan kokatuta,
mortuko bitxiak egon
daitezen islatuta.

8
Ataramiñeri esker
pozarren bizi gara,
printzak arimatik dira
irteten argitara,
herriak ahantz ez dezan
lan jasoen zirrara,
egon daitezela bihar
edonoren bistara.

*2015eko azaroaren 15ean*

## 1977an gertatu ez zena gerta dadin

1
Argia diz-diz hasi zenean hunkitu nintzen
ilunari eremua kendu ziolako,
amnistia zetorrela iruditu zitzaigun
diktadurak azken hatsa eman zuelako,
ikurrina udaletan ipini zutelako,
kartzelak hutsik geratzen ari zirelako.
Pozik geunden bozkatzeko eskubidearekin
independentzia gertu genekusalako,
Ama-Lur ta euskara bikain zeudekeelako,
lan baldintzak duinak izan zitezkeelako,
tamalez frankistek boterean jarraitu zuten
erreformak hausketa lapurtu zigulako.

2
"Hogeita hemeretzi urte geroago preso",
kartzelan maiz dio garai hartako gazteak,
nahiz Askatasunaren Ibilaldia zertu zen,
ez ziren zabaldu amnistiaren ateak,
lubakiaren barruan asko sufritu dugu,
ez dira asebete genituen usteak.
Horregatik plaza mukuru beteko ditugu,
lortuta giza eskubideak ta besteak,
"bart Euskal Herrira independentzia heldu da",
egunkarian esango baitu albisteak,
demokraziaren alde zintzoki bat eginez
hautsiko ditugu erreformaren kateak.

*2016ko otsailaren 14an*



**Patxi Uranga Salbide**
1976.10.25
Usurbil

Atxilotze data: 2009ko ekainaren 23a.



Centro Penitenciario Fontcalent
Apdo. 5.050
03113 Alacant

## Liriken hautsa

***(Edo Leteren bertsio talegeroa)***

Liriken hautsa egun batean bilakatu zen bizigai
hauts hura nahastuz kafearekin arruntak ziraden ernai
eta horrela bizitzen dira gerturatuaz gure artera
atsedenik hartu gabe, beti eskean doaz aurrera
kate horretan denok batera gogorki loturik gaude.

Arruntak badu modulu latzak menperatzeko premia
pilula bila bizi da eta hori du bere egia
ekin ta ekin topatzen ditu, zorpetze hortan ezin gelditu
diazepan ta kafea, bellotaren bat nekez aurkitu
etsai berriak noizbait erdituz, hortan jokatuz bizia.

Kideon lana pazientzia dugu, aldenduta mantentzea
gure ametsekin bat izan eta ergelez paso egitea
eta indarrak ongi errotuz, gure sustraiak lur honi ez lotuz
behingoz etxera joatea, ezaren gudaz baietza sortuz
"no doy tarjetas" legetzat hartuz beti aurrera joatea.

Ez daukanak ongi ohi daki edukitzea zein den ona
bizio sorta ase ezinik beti bizi da gizona
batzutan motzak bagera eta gauden tokitik hemendik bertan
saia gaitezen ikasten, arrunt astunak bazterturikan
flamenko diskak behingoz erreta, patio on bat eskuratzen.

Sortu ziraden giro beretik sortuko dira besteak
etxe hauetan iraungo dute junkie adaska gazteak
beren marroien jabe eraikiz, ta erortzean inoiz ez jaikiz
ximeltzen joanen direnak kafe, pilula, zilar ta zaldiz
beren beroak txinaz garbiz ebakiko dituztenak.

---

* Lirika, Diazepan: bi pilula mota. Kafearekin nahastuta, Coca Colaz lagunduta nahiz sudurretik sartuta edo zilar paperean erreta kontsumitzen dituzte.

* Bellota: haxix "arraultza". Teorian kalitate gorenekoa baina askotan firestone usainekoa.

* Zilarra: "Albal papera" zaldia, basea... erretzeko.

* Moldaketa honetan oso profil zehatza duen preso multzo bati buruz modu kritiko eta umoretsuan aritu naiz. Isolamenduko galerian 1. graduko moduluetan edo 2. graduko modulu gatazkatsuenetan aurki daitezke. Inolaz ere ez ditut preso sozial guztiak zaku berean sartu.

*Fontcalent, 2016ko ekaina*

## Baikortasunez herren

***(Doinua: Habanera)***

Aspalditxoan saminez
gainezka daukat barrena
bizipozez eskas nabil
baikortasunez herrena.
Bateko eta besteko
honaino iristen dena
zalapartaren erdian
harrapatzen gaituena
kalera begiratuta
ai ene, ze nahasmena
elkar ezin eramanda
atzo kidegoa zena
arrazoia entregatzea
ez ote dugu onena
murruen ordez pitzatzen
bagabiltz itxaropena.

Ura pasata alferrik
bada presa egitea
antzera gertatzen zaigu
komeni da esatea
batzuen modu traketsek
sortutako nahastea
ta bestei ezin ulertu
etsaia etxean ikustea
gurpil horretan jiraka
ematen dugun tartea
denbora galdua da ta
borrokarentzat kaltea
lortuko bada indarren
harremana aldatzea
ea behingoz lortzen dugun
espabilatzen hastea.

Inorekin ez erabat
eta bi suren erdian
ez merezi, ez bilatu
dugun egoera lohian
iparra galduta eta
nondik jo jakin nahian
halamoduz tinko eusten
sarri nigarra begian
pentsatzen jartzen naizen
egoeraren larrian
barne korapiloa oihu
bihurtzen zait eztarrian
elkartu gaitezen berriz
denona zen lubakian
zeren horrela bakarrik
lortuko dugu agian.

*Fontcalent, 2016ko uztaila*

## Xomorrori

***(Doinua: Habanera)***

Arrano hura bezala
harkaitz bati lotua
25 urte luze
bete dituk bahitua
hegalak ezin zabaldu
ai zer kaiola estua
Herrerako ezlekua
nahiz ta kartzela den zerbait
iluntasunak hartua
hire bertsoen sugarrez
mantendu duk argitua
gu biontzat hasieratik
Xomorro haiz eredua
Jasoitzak Foncalentetik
besarkada ta musua.

*Fontcalent*



**Aitor Fresnedo Gerrikagoitia**
Irailak 23
Portugalete

Atxilotze data: 1996ko uztailaren 25ean



Centro penitenciario Jaen II
23009 Jaen

## Hirugarrentxua

Ziega bat dago kartzelan eta
kartzela dago munduan,
gizon bat dago ziega horretan
bide eginez gauean.

Iluna dago, berandu baita,
beranduegi, beharbada.
Isilpean da orain mundua,
entzun egiten da isila.

Kanpoko foku garaietatik
dator argi-errainua,
leihoko barroteen itzala
zurrun ziegako lurrean.

Joan eta etorri, etenik gabe,
joan eta jin, jin eta joan.
Ez da gizon bat, bi gizon dira,
bi eta bat hiru dira.

Ziegako atetik hormaraino eta
hormatik berriz atera,
lau urrats dira, lau mila legoa
urik gabeko eremuan.

Ispiluari begia botaz
pasatzen den bakoitzean;
harunzkoan da sorgin ankerra,
honunzkoan gizajoa.

Ilea laztu egiten zaio;
barre, zoroak bezala,
ikaraz eta plazerez be bai,
egia esan behar bada.

Kate honexen katebegiak
berriz zenbatzera noa;
harunzko ezkorra baikor itzultzen
neuk hartzen ditut nekeak!

Gizon bat dago ziega batean,
ez da gehiago gizon bat,
banatu egin da, orain bi dira,
hirugarrentxua hor da.

Iluna baino ez da inguruan,
eta ilunetan argi bat,
argitan dago itzal bat eta
itzaletan ederrena.

Ziega bat dago kartzelan eta
kartzela dago munduan,
munduan dago kartzela eta
ziega barruan gizona.

*Jaen, 2016.09.02*



**Gorka Lupiañez Mintegi**
1980
Durango

Atxilotze data: 2007ko abenduaren 6a.



Centro Penitenciario Topas
Carretera N-630, km. 314
37799 Topas
Salamanca



**Ekhiñe Eizagirre Zubiaurre**
1984
Zarautz

Atxilotze data: 2013ko maiatzak 7a.

Ataramiñez gain, Ekhiñek hamaika bertso argitaratuak ditu ARGIA aldizkarian, baita Susa argitaletxean olerki bilduma, *Alde erantzira nabil* (Susa, 2016).



Fresnes - Maison d´arrêt
3, Allée des Thuyas
94261 Fesnes Cédex
Frantzia

## Amets

Atzoko lorratzak zapalduz aurrera
biharko ametsei gibeletik segika
orratzen norabidean oinak tik-tak
eskapatu nahi dute inora jauzika.

Estutzen nauen bilgarria suntsituz
bidaia dezaket begiak hertsita
itsasalde, mendigain, baserrien
bilgune den herri zaharra bisita.

Bahitegian ez da berdin amesten
lo sakonetan edo itzarrita
mamu, beldur zein ate-klakadek
usu esnatzen gaituzte garrasika.

Loaldietakoak
erantzunik gabeko gure deiak
aurpegi gabeko buruak
hesi atzeko murruak
ziurgabetasun urriak
askatu ezin antsiak
oroimen ahantziak.

Esnaldietakoak,
bakarkako ihesaldiak
gu bion ametsak
maite nauzuenon ferekak
ene bizi-irrikak
fantasia (b)ero eztiak!

Haginpe zaildu honen itzalean
egosten ditut
        amets idorrak,
        egoskorrak (ezin bestela)
        entzungorrak
ilusio hauskorrak,

arnasten
        amets imajina ezinak
        mizkinak,
        herriminak,
itxaropen grinak.

Amesgaizto ankerrenean
amesten ditut, tik-tak,
ametsik ederrenak.
Estatu, epaile, giltzari, poliziak
lege, dogma, sarraila, hesiak
ezerk
inork
bahitu ezinak.

## Heriotzaren komedia

Lehen zatia:
plegatutako labana
ahoan barrena,
          arnasa etena.

Bigarren atala:
pilula tropela
eztarritik behera,
aparra ezpainera.

Hirugarren eszena:
besoa xerratuta,
jario itzela
odol epela.

Laugarren agerraldia:
lokarria eztarrian,
oin dardaratiak
begi zuriak.

Hauxe espetxeko komeria
betiereko beherapen
merkealdian bizia
demokratek patrozinatu
politikoek babestu
giltzariek jantzitako
heriotzaren komedia.

Zure izatea hautsi,
zu izateari utzi eta
suizidioa ihesaldia.

## Araudia

Garun oso bat
araudian sartuta,
pentsamenduak kateatuta,
neuronak uniformizatuta,
preso den bakarra
zeuen burua.

## Negua joan da eta...

*"Izpi txiki-txikiren bat agertuz doa gaurkoan*
*poztasun handi batek besarkatzen nau,*
*mesedez ozen esan negua joan egin dela*
*nire arima hotzak ez du sinisten eta...".*

Erdu nigana elur
ingura nazan edo igurtzi
izara izoztu zuriz.
Ez naun hozkil ez izuti.

Negua iraungi zaigun
desira azkenik itzuri,
loa itzartu eta
hego haizea itzuli.
Izorraldia behinola haizetu,
igurikatzea azkendu,
asaldura airean ketu.

Janzten gintuen elurra
bihurtu zaigun adurra,
erlanztuz bisaia iluna.
Mortu infinitu luzea
atzera pausuzko bidea,
mantendu dinagu ezkurra
ukabilean estu gordea.

Ez hitzerdi, ez basoerdi
orain dena dun izerdi
loraila zaigun erdi.
A ze garai istila
igaro berri den agorrila
hator nigana maitea
ezti jo dezagun ezkila.

Pilpira kolpez bi harri
nigana nahi haut ekarri,
ondoan senti, suharri,
zentzumen kitzikagarri.
Amultsu soaz elkarri
jada ez hotz, ez egarri
negua baitzaigun itzali.

## Harri artean

Espetxean egotea da:
egarri,
haizea edan nahi
eta ura arnastea.

## Berrasmatu

Azal zartatuetan
inskribatuta dirauten
zaurietan barrena
tatuatuaz plazera
asmatzen ditugu
borrokatzeko
maitatzeko
erresistitzeko
larrua jotzeko
mila eta bat era.

## Ene sinadura

Lohi
zakar
baldar
miseria erdian miserablea.
Zein zikina ene poesia
garratza hiztegia
zentzumenek
-burnia, zementua-
beste lekukorik ez dute-eta.

Bizitzako eremu ederrenak
urrin gabeak direnean,
        urri, urrun
zenbat oroitzapen kuttun.

Hemen ez da itsaso usainik
malkoen oroimena ez bada,
        gatz, garratz, jostorratz
        larru artera zast.
Dutxak hotzegiak ez direnean,
melankoliazko bainuak dira
begi zuloetan barrena lurruntzen zaigu denbora.

Udazkenak ez du ehundurarik
hostorik gabeko paisaia biluzian
hotza sustraitu eta iltzatu zaigu hezur zuritan.

Izarapeak kolore urdina du hemen
amildegi bat ur sakonetan
arrain mortu bat da ur-azala
hasperen itoen hilerria begi hertsietan.

Gordina da gure berba
gorputza ukabil forman bildua
bizitza. Hitza. Ekintza.
Esaldi bakoitzean
zartakoa paperean.

Berunezko begirada da gure poesia
bizkarrean gordeak ditugun laban,
pistola eta leherkari denen itzala,
odol usainaren plazer mizkina
okatutako lerde, amorru berde.
          Zekena, lerdena
irudi mehe, zuri, zintzo, ziniko eta aratzari
ziztaturiko eztena.

Nola ari espetxeaz, ez bada
muki lehor bat arkatzari itsatsita.
Ezinak iraungitze datarik ezagutzen ez duen lurrean
ustel lurrinez ahoskatuak dira nireak
irakurri nahi dituenarentzat
horixe
mundu txit loriatsu honetatik
askatzen dudan sinadura.

## Bazterreko ahotsak

Etxetik desterratua
(peri)ferian kotizatua
kalea eguneroko eszena
iragarkietan inoiz agertuko ez dena.
Inposatutako kaioletatik
egunero ihesi dabilena
gerrak bortxatu eta erraildako
erle beltzaren eztena
zirrikitu orotarik
plazerez destilatzen dena.

Ez-ulertua,
TranSanta Maria
ez ama, ez birjina
lumadun azal
ahats zikina,
gorputz matxino
gormant alaena!
Karrika ilunak
dizdizka lehertzen dituena.
Ostadar kolorez hegaldatuz
eta aldrebestuz dena!

Arbaso, lur eta baso
bide zuzenak maite ez dituena.
Sabel, esku, sorleku.
ukendu eta gordeleku.
Jakintza, hitza, ekintza,
suen inguruan saltoka
eta dantzan gabiltza.

Dama adar okerra,
emagin, belagin, indigena
sutan erre zintuztena
ez gaur, ez bihar, ez atzo
erraustu ezin, ordea,
gu guztion sena
menderik mende bizirik dirauena.

> MARRAZKIAREN EGILEA: ITZIAR MORENO
Teknika mistoa: Kollage, Akrilikoa, Grafitoa eta Boligrafoa.



**Itziar Moreno Martinez**
1982
Bilbo

Atxilotze data: 2011ko apirilaren 10a.



Fresnes - Maison d´arrêt
3, Allée des Thuyas
94261 Fesnes Cédex
Frantzia


EUSKAL HERRIA
2010
¿ZER?!
NOLA...?!
ALABA ISOLAMENDUAN
SARTU DUTELA...?!
TXAN
TXAN!
TXAAAN!!
FFSSSSSHT!!
KLAK!
ETXEKO POWER
BEHAR DEN GUZTIRAKO



Akrilikoa mihise gainean (27x22 zm)



**Aletxu Zobaran Arrieta**
1981
Gorliz

Atxilotze data: 2011ko martxoaren 10a.



Maison d'arrêt
40 boulevard des Nations
BP 351
69962 Corbas Cédex
Frantzia

## Estereoskopia poliedriko zoomifikagarria

Batzuk datoz iota markagailuarekin,
gu tontotzat hartuz,
azaltzera euren teoria,
beste behin ere.
Gu ez omen gara ezer,
kanpotik datozen guztien nahasketa besterik ez.
Inbasio guztiak eta bereziki
oraingoa iustifikatzen du iota horrek,
idioten iota.
Baina bai, arrazoirik badute ere,
hemen asko pasa dira.
Askok utzi dute euren arrastoa.
Pentsatu behar dugu haiek bezala?
Haiek gu gara?
Zergatik ukatzen dugu gure izana?

Ekintza da izantzaren iturria.

Hemen egiten duena herria da.
Agintariak egin asko ez,
baina gero izan nahi bai.
Eta denok bera izatea ere nahi du.
Baina bera da, dena : ia deus ez,
arkakusoa, inutila, ezgaia.
Herriak egiten du, baina ez da.
Ez omen da ez bada agintariaren nahiez.
Baina egintzaren errealitatea
ezin burugogorragoa da.
Dagoena ezin ulertu
agintari hauen betaurrekoekin.

Atzo bezala gaur ere.

Han bezala hemen ere.
Baina egia ez dago hemen edo han,
arrazoia ez da aurkitzen
nire edo zure teorian.
Arrazoirik ez zuen,
ez Einsteinek ezta Bohrrek ere,
biek arrazoia zuten bitartean.
Batek nahi du txorizo eta besteak pernil.
Mahaian bestea badago nik ez dut hor lekurik.
Ni naizena onartu arte ez dut ezer egingo.
Nire agintea onartu arte
ez da ezer mugitzen.
Eta hil behar bagara berdin dit,
ez gara mugituko eta kitto.
Mugitzen dena txikituko dut,
txakurretara botako dut, eurek jan dezaten.
Eurek ezingo dute nirekin,
gurekin bukatu behar badute ere.

Zeren gu ez gara nik nahi dudana besterik.

Txorizo ala pernil.
Ihes egin zuen batek,
ekarri zuen poliedroaren aipamena,
bere jabeen eskuetan jarri baino lehen,
edo bere betiko bidean beste pausua egin baino lehen.
Kontraesana itzela da,
baina arrazoia du, ere, zantar horrek.

. . .

Gaur kaka eta bihar lore,
atzoko kakalore.
Infragorriak eta infraberdeak inframarroi.
Oreka dinamikoa itzela da
kakalore inframarroi dinamikoan
oreka mantentzen dugu bultzaka.

Zein da kakalorearen forma?
Poliedrikoa.
Poliedroa mugimenduan,
oreka fraktal dinamikoan,
hori da kakalore inframarroi dinamikoa.
Horixe bera gara gu.
Nola ikusten da halako ostia?
Estereoskopia poliedriko zoomifikagarriaz.
Hori existituko ez balitz
ez luke izenik izango
eta izena ulertu daiteke,
izanan baino, eginan ikusten baita,
formaren mugimenduan, elkarregintzan.

## El negro de la palmera

Una vez, por la calle andando
vi sentada a una persona,
ajena al mundo exterior,
con una palmera alimentándose.

Concentrada en sus sabores,
del hambre en la satisfacción,
como ahora tú en la satisfacción
del hambre de oxígeno,
esa persona estaba,
esencia humana en un instante,
que captar pude,
explicar intento y, como puedo.

No es posible entender,
ni artes ni ciencias,
ni estética ni ética,
si no se entiende eso.
¿Pero qué es eso?
Eso es eso: lo humano.
Humano, animal, meta-químico.
Lo orgánico y vulnerable.

La palmera. Puede ser una naranja,
puede ser la lectura de un poema,
puede ser una caricia, una mirada.
¿Pero qué es? Es eso que puede
hacer llorar a aquel que
no es un robot.
Es lo humano, animal, meta-químico.
Lo orgánico y vulnerable.

La mirada de una amiga,
con forma de orangután, de perro,
de caballo o de persona.
Desde una imagen en cosa convertida
o directamente en la vida real,
esa que una vez aparece, desaparece
pero que es la más real.
Lo humano como parte
de lo animal, de lo orgánico,
de lo vivo.
La consciencia de una misma
en relación a las demás.
La superación de la jaula
del mundo individual
del mundo robotizado
narcotizado, hidroponizado,
domesticado, homogeneizado.
La cobardía ante la sensualidad
la ignorancia de la animalidad,
la estupidez de la robotidad.

La bomba que revienta todo el universo
en una explosión catártica
y abre una brecha en el cosmos
que se expande,
dejando entrar en el interior
la luz del universo exterior.
La nueva nación del que renace
la llama que le mantiene viva
ya la consciencia de su sensualidad.

La empatía.



**Mikel Orbegozo Etxarri**
1979
Intxaurrondo

Atxilotze data: 2005eko otsailaren 17a.

Hamaikatxo proiektutan bere margo eta irudien arrastoa aurkitu liteke. Ataramiñekookin bat *Preso Nago* (2010), *Preso Nago 2* (2013) eta *Ilargiraino!* (2015) ilustrazio liburuak argitaratu ditu.



Badajoz-Prisión Provincial.
Carretera de Olivenza, km. 7,3.
06071 Badajoz.

# ETXERATZEKO ORDUA DA!



# GAIXORIK






**Mikel Orbegozo Etxarri**
Marrazkiak

ANTZEKO ZERBAIT GERTATU ZEN ESPETXEREN BATEAN NOIZBAIT... USTE DUT... AGIAN... BALITEKE... IGUAL EZ...

GIMNASIORA GOAZ, HANKA EGITERA, BAZATOZ?










BERANDUTZEN ARI DIRA, LASTER ZENBAKETA... ZERTAN ARI DIREN BEGIRATZERA JOANGO NAIZ.






SIESTAN ARI NINTZEN GOXO ETA LASAI ...
TELEBISTAK PP-KO NORBAITEN AHOTSA NIGANA EKARRI ZUEN ARTE.
PRESO POLITIKOAK ASKATUAK IZAN DAITEZELA ESKATZEN DUGU ...
POINK!
ZER?
... VENEZUELAN
KONTXO, ESATEN NUEN BA...
PUN-PUN! PUN-PUN! PUN-PUN! PUN-PUN! PUN-PUN! PUN-PUN! PUN-PUN! PUN-PUN! PUN-PUN! PUN-PUN! PUN!


KATALUNIAKO PROZESUAZ HITZ EGITEN DUTENEAN...
POLITIKARIEK BETI BETE BEHAR DUTE LEGEA! BESTELA DEMOKRAZIAREN JOKO ARAUAK APURTZEN DIRA!
ORDEA, KONTUA EUSKAL AFERA DENEAN...
LEGEAK DIOENAREN AURKA GAIXO DAUDEN PRESOAK BEREN ZELDETAN OSASUNA ETA BIZITZA GALTZEN SEGITZEN DUTENEAN...
... BOST AXOLA ZAIE LEGEA!
ZE LEGE?!



**Oier Andueza Antxia**
1975
Durango

Atxilotze data: 2001. urtean.



Centro penitenciario Murcia II
Paraje Los Charcos
30191 Campos del Río
Murcia



**Joseba Galarraga Arrona**
1959
Deba

Atxilotze data: 1999ko uztailaren 7a.



Centro penitenciario Valladolid
Ctra. Adanero - Gijon, km. 94
47011 Villanubla
Valladolid



**Euskal Preso Politikoen Kolektiboak Barrutik aldizkaria kaleratu zuen 1989-1993. urteen artean. Sakabanaketa garaia zen, sakabanaketa orokorra, sakabanaketa garai gordinena. "Ixilkeria eta isolamendua gainditu nahi ditugu", zioen aurkezpenak. Eta, hala, salaketak, kartzelako kronikak, hausnarketak, agiriak eta bestelako idatziak zabaldu zituzten bost ale marduletan. Guztiak, batekoak eta bestelakoak, sinadura pertsonalik gabe, kolektiboak izenpetuak.**

**Haietako testu batzuk ekarri ditugu Ataramiñe ale honetara, oroigarri baino, orduko letra horiek oraingo idatziak ere direlako. Kartzelan idatziak baitira. Kartzelan, non harresien itzalpean denbora gelditu eta zigorra luzatu egiten den. Non bertan idatzitakoa inoiz ez den iragana izango, presoak bertan diren bitartean behintzat.**

Barrutik aldizkariak PDF formatuan eskuragarri daude Ataramiñeren webgunean:
**www.literaturakoadernoak.org/?p=2620**

## Banandurik ere bat gara

«Lagunengandik urrun gaituzte»;
zergatik ta zertarako?:
gure etsipena lortzeko eta
aurreratzen goazelako.
Dena alperrikan, aspaldidanik
geldiezinak garelako,
Euskadi askatu arte borrokan
segituko dugulako.

Geroa Euskadin izan dadila
denontzat ta denongatik,
oraintxe jaso behar dugu guk
etsaiaren mengantzatik;
mila tokitan zatiturikan
ere ez dugu galtzerik,
euskal iraultzak iraungo baitu
kate guztien gainetik.



## Tok, mok, krok, krak...

Joño badabiltz txistofonoarekin esnatu arazi nahian. Laister irikiko dituzte ateak. Baina bitartean berriz loak harrapatu nau.

*Se va a incorporar!!*, boki madarikatuen ahots lerdoak!, magnetofonoa ahoan dutela dirudi. Banan banan, zeldaz zelda arakatzen dituzte beren bahituak hilik dauden beldur faltsuaz.

Joan zaitez zure ama horrela esnatzea!, madarikatuoi hilko zaitut!, joan hadi popatik hartzera!. Eurak ere entzuten dituzte... baina bost ajola zaie; ondo dakite ze lanpostu aukeratu duten.

Eguna joan eguna etorri, izorratzen digute itzartzeko aukera ditzakegun amets goxoak.

Gero egunean zehar, gure joan etorriak ehun metrotako karratu batetan izango dira. Beti poltsaz beterik; gure etxea gainean eramango dugu. Gora, behera, sukaldera, zeldara, patiora, eskolara,... ez dago besterik! Buelta eta buelta, etzan, eseri, ibili, beti kontrolatuak! Udan bero, neguan hotz, ezin freskatu, ezin aurkitu su goxo bat.

Gabeko hamarretan bakoitza bere txabolan, mundutik urrunduak!

Pikoloa lehio parean bere garitan.

Tok, mok, krok, krak...



Neure ahotsa
hormetan errebotatzen
entzuteak izorratzen nau

egunero hitz berberez
madarikatzeak izorratzen nau

neure sudurraren proiekzioak
ezkerreko orkatilaren kontra
topo egiteak aspertzen nau

eta paseiatu egiten naiz
itxuraz
indiferente

nere zeldan bizi den armiarma bezala
batzutan barre egiten die nere belarriei
hatzazalak margotzen dituen bitartean
deusezezko
txori bat bezala

ederra litzateke
hamalau litro
aire
edatea
nere patrikak
hodeiz
betetzea
neure burua
mendiz
estaltzea
ur jauzi
batean
barrena
korritzea
bisera horidun
zaldi
baten antzera

tira...
ez dut behintzat permetatuko
neure egonaldi gris hau
miseriaz
elikatzen direnentzako
probetxurik izan dadin
eta ez ditut neure bekainak mailegatuko
euri usainik
sekula ez dagoen
baizik eta
legez
zikindu paperak soilik
daudeneko
despatxoetako mahaietako hautsa kentzeko



## Irratia itzali

Irratia itzali
egiten dut
aldameneko zeldan den lagunari
hatzazalak ebakitzen
entzuten diodanean
zeren ez baita sekulan jartzen
entzuten dudan musikaren
erritmoarekin ados


Zergatik musika alaia entzuten ari naizelarik
zatozkit gogora?
zergatik zatoz
musika tristea entzuten dudanean?
zergatik beti
musikarik ederrenarekin?
dena den
musika entzunez iragiten ditut egunak

Astelehenero bezala
astelehena da
jode! ze bero egiten duen...
zure argazkia ikusten
dudanean
ez dut sentitzen beroik
ez eta ere hotzik,
zu bakarrik

Egunero bezala
zure argazkira begira nago
eta Bach-en musikak
argazkitik irten erazten zaitu
eta nire barnera sartzen zara
bertan daukadan itsasoari
eragiten diozularik
eta irato egiten nau
neurri gabeko itsaso honek,
askatu ahal izango balitz
ia masailak bustiko ez lizkidakeen
itsasoa

Astelehenero bezala
astelehena da
baina jadanik
ez du bero egiten,
hala ere
izerdiak estalirik
gordetzen dut zure argazkia




**Kate honek hamaika begi ditu,**
**hamaika ate, hamaika pausu,**
**hamaika amets, hamaika izu,**
**hamaika izar,**
**hilargia, herri bat**
**eta zu.**

## Uniforme gabekoak

Puerto 2an gaude. "En aislamiento podrán disfrutar de una celda individual", esaten digu zuzendariak isolamenera kondenatzen gaituztela adieraztean. Moduio desberdinetan gainera. Dena den, ez dugu santziorik eta, besteren artean, ea inorekin hitz egitea ere debekatzen digun galdetzen diogu. "Hombre, pueden hablar con el asistente social, con el educador, con el maestro... solo tienen que hacer una instancia". Ongi.

Zuzendariaren aurretik asistente soziala ezagutu dugu. Sarrerazko ohizko sesioak izan, argazkiak atera eta fitxa egin ondoren periodon sartu gaituzte. Hara etorri da: "Soy del equipo de clasificación. Primero hay que mirar el expediente, luego ya veremos donde les ponemos. Ahora tienen que rellenar esta encuesta". Ez dugu inkestarik betetzen baina. "Bueno, si no quieren". Gero, mehatxatu egin dugula esan diola bota digu zuzendariak.

Beste egun batean, isolamenduko zeldan jadanik, beste asistente sozial bat agertzen da. Gartzelako funtzionamendua esplikatzen digu: "Las instancias suelen tardar entre diez y quince días; lo demás, si no les contestan es que están denegadas". Baina hori... "Es que ustedes están mal acostumbrados. En este centro tenemos novecientos internos". Bai on, bada.

Hurrengo baten hirugarren asistente soziala etortzen zaigu: "Es para hacerle una entrevista. Vamos a hacerle la revisión de grado". Esaten diogu ez dugula sailkapen errepresibo halakorik behar, ez lehen, ez bigarren, ez hirugarren gradurik, ez bada gure izaera politikoa dela eta tratamendu kolektiboa gure dignitate pertsonala ere errespetatuz. "Sí, claro; bueno, hasta luego".

Gero edukadorea. Guardia Zibil ohia omen berau: "Les traigo la notificación del primer grado, primera fase. Tienen que firmar aquí. Ez dugula sinatuko. "Pues tendré que dar parte por no cumplir con sus obligaciones". Noski.

Ondoko egunetan, bada, erregimena, besterik gabe, okerragotu egiten da. Handik hilabete eta erdira berriro kontuarekin. Laugarren asistente soziala: "Vengo a ver si quieren acudir a la Junta de Clasificación". Ez, ez goazela. "Vale, adiós".

Egun berean pedagogoa ere bai: "Hola, buenos días. Soy la pedagoga del módulo, ¿me pueden decir que están estudiando?". Zertarako... "Es para la evaluación del tratamiento". Ez dugula ezer jakin nahi horretaz. "Bien, hasta luego".

Eta berriro neurri errepresiboak. "La primera fase todavía puede ser peor", esaten digu zuzendariordeak; "claro que también pueden pasar a la segunda, a la tercera... Está en sus manos".

Asistente sozial-edukadore-pedagogoak, zuzendari eta zuzendariordearen gidaritzapean, kriminologo-psikologo-funtzionario tekniko-psikiatra-soziologoekin batera, EQUIPO DE OBSERVACIÓN Y DE TRATAMIENTO delakoak osatzen dituzte. Maisuen eta sendagileen informeak ere erabiliak izaten dira. Euren funtzioa presoa indibidualizatzea da, sistema –eta gizarte– menperatzaile baten bameratzea. Begiratu-nortasuna finkatu-ordenatu-sailkatu-tra-tamendua ezarri-zigor eta saritarako informeak eman. Errepresioaren oinarri teknikoa dira, gaur egungo gartzela teknifikatuaren ezaugarri nabarmena.

Hala ere, errepresio zuzenaz berezi nahi dituzte beren buruak; "Yo no se nada-eso es una cuestión de régimen-será cosa de Madrid-nosotros sólo proponemos, no tomamos las decisiones".

Ez dute uniformerik. Gazteak dira, neskak eta mutilak. Oso "amableak" jeneralean. "Buenos días-hola que tal-sí, claro-bueno, adiós-hasta luego". Eta alde egiten dute. Karramarroa itxi, metalezko ate astuna, morroiloa, giltzari hiru buelta eman, eta badoaz, galeriako oinotsetan, libre izan nahi dutenak isolameneko zeldan laga eta informe eta espedienteetan korapilatzera.





## Gauari

Gauari
nahi nioke galdetu
zergatik ez dituen
ene penak
egunaren argia bezala
aienatzen.

Izarrei
nahi nieke galdetu
zergatik ez duten
ene bihotza
gauaren iluna bezala
alaitzen.

Haizeari
nahi nioke galdetu
zergatik ez dizkidan
maitearen laztanak
pago hosto igarrak bezala
ekartzen.

Euriari
nahi nioke galdetu
zergatik ez duen
ene egarria
zelai lehorrarena bezala
asetzen.

Etsaiari
nahi nioke galdetu
zergatik ez duen
herriaren garrasia
indarkeri ankerraren ordez
aditu nahi.

**G**aur, urte-zahar eguna,
—zigor zeldetan nagoela—
lagun artera joan naitekeela
erran dit
atzo umilatu ninduen gartzeleroak
egun berezia dela eta
bere umeen artean
kontzientzi garbiarekin
agertu nahi duela.
Kontzientzia astean behin
garbitzen dugun mihisea
balitz bezalaxe...



Espainiar edo frantziar gartzela haretan,
beste askotan bezala,
Eta beste preso askorekin batera
bada euskal militante bat eta
Patioko denboran mutil honek harresi zurian
hatzazalez GORA E.T.A. idatzi du.
Funtzionarioak letra mehe baina nabarmenegiok
klarionez ezabatzen entseiatu dira.
Baina zerbitzu zuzendaria heldu eta
letra loditako GORA E.T.A. irakurtzean.
Ernegaturik pintoreari deitu eta "harresi osoa"
pindatzeko agindu dio.
Harresia gorriz pindatu dute, baina pintura lehortzean
"han" GORA E.T.A. igartzen da,
Eta gartzela zuzendaria heldu delarik
igeltsaria ekartzeko agindu da
"Inskrizioa" zizelez letrarik letra urra dezan.
Eta igeltsariak letrarik letra urratu eta
Oraia bai harresi gorrian kolore gabe baina oso sakon
izkiriaturik geratu dela
GORA E.T.A.
Eta injustizia ministroa allegatu denean inguruari
arras serio begiratu eta agindu du:
"Harresia suntsitu behar da".
Bertolt BRECHTen poemaren bariazioa

## Espainiar edo frantziar gartzela haretan

Espainiar edo frantziar gartzela haretan,
    beste askotan bezala,
Eta beste preso askorekin batera
    bada euskal militante bat eta
Patioko denboran mutil honek harresi zurian
    hatzazalez GORA E.T.A. idatzi du.
Funtzionarioak letra mehe baina nabarmenegiok
    klarionez ezabatzen entseiatu dira.
Baina zerbitzu zuzendaria heldu eta
    letra loditako GORA E.T.A. irakurtzean.
Ernegaturik pintoreari deitu eta "harresi osoa"
    pindatzeko agindu dio.
Harresia gorriz pindatu dute, baina pintura lehortzean
    "han" GORA E.T.A. igartzen da,
Eta gartzela zuzendaria heldu delarik
    igeltsaria ekartzeko agindu du
"Inskrizioa" zizelez letrarik letra urra dezan.
    Eta igeltsariak letrarik letra urratu eta
Orain bai harresi gorrian kolore gabe baina oso sakon
    izkiriaturik geratu dela
        GORA E.T.A.
Eta injustizia ministroa ailegatu denean inguruari
    arras serio begiratu eta agindu du:
        "Harresia suntsitu behar da".

*Bertolt BRECHTen poemaren bariazioa*



## Errespetua

Giza errespetua.
Jar zaitez zutik!
Begira lurrera!
Geldi!
Txalo egiten artean
ez
dago
eseritzerik!
Ixilik, gero!
Ea errespetua gordetzen duzuen
terrorista hok!
Eskutitzak zabalik!
Bixitarako larru
gorritan, bela!
Hablancristianocohone!
• • •
"Y ya saben, si
nos respetamos
mutuamente
to-do-i-ra-bien..."
zion zakur-buruak.
Errespetoa.
Alubak.

# Tutuak Herreran

**Autobus tutuak.**
**Hara! Etxaperuak!**
**Jaiak ote dira**
**hemen?**
**Baina zer...**
**Oibadios, baina, baina...**
**- Kepa, Keeeepaaa! Jooon! Inakiii!**
**- Hemeeen! Nor, nor...**
**- Joxe! Maite zaitut!**
**- Nik ere, nik ere! Aupa!**
**- Ramooon! Eutsi, eutsi gogooor!**
**- Hori hori, jo ta kia!**
**... eta hola.**
**Kantuak entzuten ditugu.**
**Malkoak,**
**malko mardulak goitti-behetti,**
**ezpainek osatzen duten**
**irripar**
**alaiaren**
**barrena.**
**Irabazi dugu!**





Ainarak urritzen hasten diren garai honetan
Ba dakizu zure jauregi hutsaren salan
Orduak nekez ematen dituen erlojuak
Konplizitateen oihaneko zuhaitz sendoenak
Soiltzen dituela urri kigabe.

Badakizu zure gela epelaren leihoan
Elurrak urtzen hasten diren une hartan
Haroak nagi goldetzen dituen kanpaidorreak
Afektuen itsasoko izozmendirik gotorrenak
Suntsituko dituela maitekiko.

60 BARRUTIK

## Ainarak urritzen hasten diren garai honetan

Ainarak urritzen hasten diren garai honetan
Ba dakizu zure jauregi hutsaren salan
Orduak nekez ematen dituen erlojuak
Konplizitateen oihaneko zuhaitz sendoenak
Soiltzen dituela urriki gabe.

Badakizu zure gela epelaren leihoan
Elurrak urtzen hasten diren une hartan
Haroak nagi goldetzen dituen kanpaidorreak
Afektuen itsasoko izozmendirik gotorrenak
Suntsituko dituela maitekiko.



*Pensamientos*

**¿Cuándo saldré de aquí?
Eso no importa, lo que interesa es que
a pesar del odio,
el dolor, la incertidumbre,
debemos seguir con la firmeza
al pié del corazón.
Siempre junto a la lucha,
de cara a la esperanza,
y alegres, muy alegres, muy
alegres,...
Hasta luego.
Sigamos izando la mañana...**



*Recuerdos*

**La celda es oscura y silenciosa...**
**¡Ah, la luz de tus ojos!; ¡ah, tu voz!**
**La celda es húmeda y fría...**
**¡Ah, el calor de tu cuerpo entre las sábanas!**
**La celda es dura, hiriente...**
**¡Ah tus manos de pájaro y caricia!**
**La celda es maloliente...**
**¡Ah, el olor de tu paso en las mañanas!**
**La celda es solitaria...**
**¡Ah, tu abrazo!**

*Soñaba que era de un pueblo*
*que apostaba por el día,*
*la noche era de ellos,*
*de los que el miedo metían.*
*Con la penumbra incipiente*
*comienza la cacería,*
*van llamando por las puertas*
*pero ninguna se abría.*
*Sus gritos hieren el silencio*
*sus miradas de acero, frías.*
*En mis sueños comprendía*
*por qué nos gustaba el día.*
*Soñaba que era de un pueblo*
*sobrado de valentía,*
*que les plantaba cara*
*a quien la noche quería.*
*Largas horas de tiniebla*
*para hacer sus fechorías*
*quieren matar la historia*
*que nos acercaba al día.*
*Soñé que era de un pueblo*
*que derrotando a la noche*
*iba conquistando el día.*

# PUNTOS DE FUGA



Las ventanas, las rendijas o las grietas camufladas en los rincones del espacio pictórico representado, generalmente la cárcel, se insinúan como válvulas de escape hacia un mundo ajeno al de la realidad penitenciaria. Tal es el motivo que he visto reflejado en muchos de los dibujos y pinturas de los presos. A menudo me he preguntado si se trata de alguna tradición estética en boga, acoplada ahora al talento creador del prisionero o, si por el contrario, no es más que el anhelo de evasión que puebla los sueños de cualquier cautivo y se materializa en esos puntos de fuga.

Muchas han sido las horas que he pasado mirando a través de esas ventanas, de esas rendijas y grietas, deseando huir de este exterminio particular en el que me tienen enjaulado. Es como percibir el terreno que hay más allá de la alambrada, la tierra blanda, el aire fresco. A veces no hay más que cielo, blanco y

virgen, y otras simplemente el color azul atardecer, como una metáfora de amor y noche.

Hay quien asegura que «de la cárcel uno no puede evadirse nunca. La evasión de la cárcel lleva consigo no la recuperacion de la libertad, sino la evasión de la realidad». Me asombro, pero no dejo de captar la lucidez del razonamiento. Quizás algo similar nos pretendia comunicar Joseba Sarrionandia con sus versos «preso egon denaren gogoa / kartzelara itzultzen da beti».

Sea como sea, yo sigo contemplando los puntos de fuga y, cuando no tengo cuadros o dibujos para mirar, me fijo en un punto del cielo, me proyecto y escribo sin dejar de pensar que soy un privilegiado por disponer de una ventana a través de la cual la luz solar ilumina la celda. Otros compañeros no tienen la misma suerte: sus ventanas han sido cruelmente cegadas.

Sigo escribiendo y me afano por transmitir mis sentimientos o por, modestamente, ejercitar la agitacion y la propaganda, las formas comunicativas revolucionarias por excelencia.

Y pese a todo, es dificil imaginar en esta soledad el efecto que tendrá lo que se escribe, como difícil es explicar a los presos sociales que se acercan a mi ventana a pedirme tabaco y hacerme compañía que, pese a estar aquí tan solo y tener más de 100 años de condena, no estoy desesperado.

## «Duintasuna»

*Lehioa estali dezakezu eta egunak goibeldu*
*baina alferrik zabiltza alkaide miserable hori*
*itotzen duzun presoa itsua baita*
*Irratia kendu.*
*Jana erostea galerazi eta*
*patioko liliak moztu ditzakezu*
*baina behin eta berriro loratuko da*
*intsumiso honen udaberria.*
*Spraiez aidea pozoindu*
*esposek larrua ubel diezaidakete*
*antsiaz desiratuko dut ganbaren egunsentia*
*baina etsipenezko aienen esperoan*
*jai daukazu.*
*Maitasun eta amodioa dekretoz galerazi*
*eta ene sufrikarioz krudelki farre egin*
*baina zaude lasai voyeur nazkagarri hori*
*ez al dakizu oraindik ilargia dela ene amorantea?*
*Ziega arakatu*
*ene bizitza eta mirariak inbentariatu*
*erreinuko dotore jakintsuenak ekarri*
*eta herri nimiñoenak aztertu.*
*Beroiz diñotsut alferrik zabiltzala*
*ezinezkoa zaizulakoz*
*begibistan daramadan sekretoa irakurtzea.*
*Zu, alkaide itsusi hori*
*ez zara gai, ez, lagunen irriak ixilerazteko*
*ezin duzu, ezin, ene egarria asetu.*
*Zure txanpan ustelek ez date erosten*
*euskal semea izatearen harrotasuna*
*eta biluzik bada ere, zutik iraungo dut*
*eta barauaren bidez madarikatuko zaitut zu*
*eta zure semean semeak*
*eta areago oraindik,*
*armarik gabeko gerlari honen koleraz.*

91.MAIATZA

## Duintasuna

Leihoa estali dezakezu eta egunak goibeldu
baina alferrik zabiltza alkaide miserable hori
itotzen duzun presoa itsua baita
Irratia kendu.
Jana erostea galerazi eta
patioko liliak moztu ditzakezu
baina behin eta berriro loratuko da
intsumiso honen udaberria.
Spraiez aidea pozoindu
esposek larrua ubel diezaidakete
antsiaz desiratuko dut ganbaren egunsentia
baina etsipenezko aienen esperoan
jai daukazu.
Maitasun eta amodioa dekretoz galerazi
eta ene sufrikarioz krudelki farre egin
baina zaude lasai voyeur nazkagarri hori
ez al dakizu oraindik ilargia dela ene amorantea?
Ziega arakatu
ene bizitza eta mirariak inbentariatu
erreinuko dotore jakintsuenak ekarri
eta herri nimiñoenak aztertu.
Berriz diñotsut alferrik zabiltzala
ezinezkoa zaizulakoz
begibistan daramadan sekretoa irakurtzea.
Zu, alkaide itsusi hori
ez zara gai, ez, lagunen irriak ixilerazteko
ezin duzu, ezin, ene egarria asetu.
Zure txanpan ustelek ez dute erosten
euskal semea izatearen harrotasuna
eta biluzik bada ere, zutik iraungo dut
eta barauaren bidez madarikatuko zaitut zu
eta zure semean semeak
eta areago oraindik,
armarik gabeko gerlari honen koleraz.

# **atara**miñe

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
Joseba Arregi. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
Joxe Blanco. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza. *2005.*

**Azeri gosetia**
Kepa Etxebarria. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. Hainbaten artean. *2006.*

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). *2007.*

**Zimaren abenturak**
Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar** Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
Iñaki Ojeda. *2009.*

**Preso nago**
Mikel Orbegozo. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza. *2011.*

**Espetxetik at**
Borxa Urberuaga. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi baiz**
IBON MUÑOA. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. HAINBATEN ARTEAN. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
MIKEL ANTZA / IKER MORENO. *2012.*

**Fakin xokona**
OIER GOITIA. *2012.*

**Sasian barna**
XABIER MAKAZAGA. *2012.*

**Preso nago 2**
MIKEL ORBEGOZO. *2013.*

**Z²**
MIKEL ANTZA. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
JOKIN URAIN. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
IBON MUÑOA. *2014.*

**Urte ilunak**
NELSON MANDELA (ITZULPENA: EKAITZ SIRVENT). *2014.*

**Ilargiraino!**
MIKEL ORBEGOZO. *2015.*

**Burdin elorri arantzetan**
JOSEBA ARREGI. *2015.*

**Haizea eta Lizar Magikoa**
KEPA ETXEBERRIA ETA XABIER UGARTE. *2016.*

**Kuku erlojua**
KEPA ETXEBERRIA ETA XABIER UGARTE. *2016.*

**Haizea**
HAINBAT EGILE. *2016.*

**Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin**
IBON MUÑOA. *2016.*

